# Ama Guipuzcoaren seme alaba maitiac beren Erregue ta Erreguiña oneguien etorrerac pozquidaturic cantuz jostaldiatceco atera diraden verso edo itz neurtuac.

## ZORTCICOAN.

Milla zortci eun oguei
Eta zortci urte
Jesu Cristo jayoric
Orain bear dute :
Era gozo onequin
Pozquida aimbeste
Guipuzcoatarrentzat
Ez nuen nic uste.

Osasun onarequin
Gañera paquea
Gogoangarri degu
Aurtengo urtea :
FERNANDO Erregue ta
Bere Emaztea
Guipuzcoac chit naidu
Emen icustia.

Guipuzcoa izanic
Ain leial ta piña
Gogoz datoz Erregue
Eta Erreguiña :
Neurri gabecoa da
Gure atseguiña
Etzaicu damututcen
Berai on eguiña.

Motricora joanic
Ama Provincia
Batzarrean emandu
Bere iritcia :
FERNANDO onarequin
AMALIA eztia
Ondratcen gastatceco
Bear dan guztia.

Bidez gastatcen dana
Damu bear ezta
Tolosan eguiten du
Lembicico festa :
Andic Donostiara
Bergara ere prest da
Dantzatuco da cembait
Mutil eta nesca.

Iñorc nai badu asi
Jostarien billa
Gucietan onenac
Donostian dira :
Zoraturican berai
Legoque beguira
¿Norc joan bear ezdu
Alaco errira?

Dantzari mota asco
Egoqui jantciac
Dembora labur batez
Ongui icasiac :
Dama galai eder ta
Zar gazte guciac
Jarri ditu jostari
Orain Provinciac.

Ichasoz ta leorrez
Asco icuscari
Chuquinquiro dituzte
Donostian jarri :
Eche guciac ere
Churi eta garbi
Erregue maiteaquin
Gure ondragarri.

Festac izango dira
Ain icustecoac
Dantzari ariñaquin
Cecen ilcecoac :
Seme alaba eder
Jostari pijoac
Prest jarriric daduzca
Ama Guipuzcoac.

Zarrac eta gazteac
Nere iritcian
Pozquidaturic daude
Gure Provincian :
Erregue maitatceco
Aleguin gucian
¡ Damuric egongo da
Dembora guchian !

Guipuzcoar prestuac
Munduac badaqui
Jostatiac dirana
Gucien gañeti :
Erregueac maitatcen
Len, orain ta beti
Amodio beroaz
Biotz biotceti.

Erregue ta Erreguiña
Jartceco toquia
Jauregui eder galant
Guciz egoquia :
Apainduriaz ere
Ain dago goitia
Corral jaunaren eche
Bere berequia.

Nequezac izan arren
Onelaco lanac
Aixa eguin oiditu
Jaquintia danac :
Guipuzcoar gucioc
Maite degun amac
Artaco jarri ditu
Diputadu jaunac.

Aldamar, Olazabal
Eta Echagüe
Lardizabal laugarren
Lagun omendue :
Bat bearrean ezta
Charra sartu ure
Cembait gauza egoqui
Berac eguin due.

Atseguiñetan guera
Guipuzcoan vici
Iñorc etzuen uste
Era au icusi :
Eman guenduen itza
Ez degu nai ausi
FERNANDO Erreguea
Da gure nagusi.

Erreguiña maitati
Andre AMALIA
Icusten degula da
Bigarren aldia :
Bera dalaco aiñ on
Ta maitagarria
Biotcetan daucagu
Betico jarria.

Bici bitez Erregue
Eta Erreguiña
Oen zori ona da
Gure atseguiña :
Sendatuco litzaque
Guipuztarren miña
Beti betico beren
Alboan baguiña.

